# Baldintza duinak ostalaritzan!

# Ezagutu zure eskubideak eta ikasi defendatzen

CNT GIPUZKOA

Informa zaitez, antola zaitez, defenda zaitez.

CNT Gipuzkoak eskatzen du gogortasunez ekitea Gipuzkoako turismoak ekarritako lan-prekarietatearen eta azpi-ekonomiaren aurka. Udako bisitarien kopurua igotzeak lan-errealitate latza ezkutatzen du, hori oso nabarmena da.

Euskal Herrian oso hedatua dagoen ostalaritzaren sektoreak diru-sarrera itzelak eragiten ditu eta lanpostu ugari sortzen ditu. Hala ere, gauza jakina da hotel, taberna eta jatetxeetan lanean ari den jendeari horrek ez diola hobekuntzarik ekartzen, mozkinak ez dira langileenganaino iristen eta prekarietatea normalizatzen ari da.

Hitzarmen Kolektiboak eta Langileen Estatutuak jasotzen dituen eskubideak ezezagunak dira langile gehienentzat. Gainera, antolaketa sindikala falta da. Egoera hau guztia enpresak euren probetxurako erabiltzen ari dira eta hala, etengabe ari dira gehiegikeriak egiten.

Kontraturik gabe, Gizarte Segurantzan altan eman gabe ari dira langile asko eta asko; iruzurra aldi baterako kontratuetan; lanaldi erdiz kotizatu baina lanaldi osoan ari diren langileak; aparteko orduak ez ordaintzea; garraio-plusik ez; lanaldi artean atseden-denbora minimoa ez errespetatzea; hilabetez hilabete zenbat lanordu bete diren jaso behar duen dokumentua ez ematea; honelakoak ohikoak dira ostalaritzan.

Errealitate honen aurrean, CNT GIPUZKOAK kanpaina bat abiatu du Ostalaritzako enplegua duina izan dadin aldarrikatzeko (#OstalaritzaDuina). Horretarako, informazio-eskuorriak banatuko dizkie, langileei, maiz urratzen diren lan-eskubideak azaldu eta horren aurrean aholkularitza emateko, eta sare sozialetan ere zabalduko du.

Beharrezkoa bada, sindikatu honek bere gain hartuko du Lurraldeko Lan-Ikuskaritzan edo gizarte-jurisdikzioan salaketak ezartzea; edota gatazka sindikal publikoa zabaltzea, lan-eskubideak errespetatzen ez dituzten enpresen aurka, pikete informatiboak eginez, ostalaritza-egoitzaren aurrean boikota eskatuz...

CNT GIPUZKOAk nabarmendu nahi du gainerako sindikatuek ez dutela benetako inplikaziorik hain prekarioa den sektore honetan, langileak abandonatuta utzi dituzte. Kontua ez da besterik gabe lurralde eta sektoreetako hitzarmen kolektiboetan parte hartzea; horrekin batera, sindikatuek zuzenean inplikatu behar dute hitzarmenak bete daitezen eta enpresen gehiegikeriak salatzeko.

**Gehiegikeriak badaude, gatazka egongo da.**

# Bazenekien...

**Aldi baterako edo behin-behineko kontratu bat automatikoki mugagabea bihur daitekeela?**

Bai, normala da kontratu baten denbora-epea justifikatua ez egotea edo gaizki ezarrita egotea, gainera, ezin zara egon behin-behineko kontratu batekin 12 hilabete baino gehiago 16 hilabeteko aldi batean, hori gertatuko balitz, zure kontratua automatikoki mugagabe bihurtzen da.

**Probaldian zaudenean kontratatuta eta gizarte segurantzan altan emanda egon behar duzula?**

Ez izan zalantzarik, probaldian zaudenean kontratatuta egon behar duzu. Ohikoa da hainbat enpresariok langileak altan eman gabe edukitzea, proban daudela argudiatuz, amarrutan. Hori ez da legala. Lehen egunetik egon behar duzu kontratatuta eta altan emanda. Zure kontratuak argi eta garbi zehaztu behar du zenbatekoa den probaldia, eta gehienez ere 2 hilabetekoa izan daiteke ofizialen kasuan eta 1 kualifikaziorik gabekoen kasuan, eta kontratuaren iraupena probaldia baino laburragoa bada, orduan erdia da epe hori.

**Gehienezko lanaldia 40 ordukoa dela?**

Legeak argi adierazten du ezin direla gainditu 40 ordu astean, hori CNTren lorpen zahar horietako bat da. Aparteko lan-orduak ezin dira ohikoak izan, beste norbait kontratatu dezatela! Soilik eska diezagukete aparteko orduak betetzeko hitzarmenak zehaztutako egoera zehatz batzuetan. Baina eskubidea dago lanaldien artean 12 ordu izateko, ordubete edukitzeko bi txanda artean eta ordaindutako 15 minutuko atseden jarraitua egiteko. Zure hitzarmena ezagutu behar duzu kontu honetan engaina ez zaitzaten.

**Laneko arropa ez duzula zuk ordaindu behar?**

Enpresak derrigortuta daude uniformeak ematera, edo behar duzun arropa eman behar dizu eguneroko bizitzako arropa arrunta ez bada; edo arropa ematen ez badizu, diru-konpentsazioa eman behar dizu. Arropa arruntatzat hartzen da alkandora zuria eta oinetakoak. Janzki kopurua Barne Erregimeneko Arautegian zehazten da, edo lan-kontratuan. Arropa norberak garbitu behar du, tintategia behar duen arroparen kasuan izan ezik, kasu horretan enpresak arduratu behar du. Gutxienez, eskatu kostatzen zaizuna.

**Enpresan 3 urte badaramatzazu, antzinatasun-gehigarri bat jasotzeko eskubidea duzula?**

Zorte ona baduzu eta ez bazaituzte eduki enpresa batetik bestera, eta enpresa berean hiru urte baino gehiago egin badituzu (noizean behin norbaitek lortzen du), soldata-osagarri bat jasotzeko eskubidea duzu, zure kategoriaren arabera 50 eta 100 euro artekoa.

**Jai-egunak hobeto ordaindu behar dizkizutela?**

Besteek jai dutenean ostalaritzan lanean egon behar izatea konpentsatu behar da. Jai-egunean lan egin behar baduzu eta ezin baduzu errekuperatu, egun horrek %75eko gehikuntza du, edo bestela, jai-egun hori beste momentu batean disfruta dezakezu, %50eko gehikuntzaz.

Eskubide hauek defendatzeko eta eskubide gehiago lortzeko, duintasunez lan egiteko, ostalaritzako langileok ondo ezagutu behar ditugu eta defendatzeko antolatu behar gara.

Bazenekien askotan ez nabarmentzeak, ez salatzeak edo zurea dena ez erreklamatzeak ez zaituela babesten eta gainera kaleratzea errazten duela? Bazenekien lan-legediak babesten zaituela salaketa bat edo ekintza sindikal bat eginez gero, kaleratzea edo edozein errepresalia ezeztatuz?

CNTn esperientzia luzea dugu gure afiliatuen aurka hartutako neurriak bertan behera utziarazteko eta enpresek jardun sindikala onartzera behartzeko?

Antolatzea ez da gogo kontu huts bat, behar bat da. Afiliatuta egoteak lagunduko dizu juridikoki eta sindikalki babestua egoten, bai indibidualki eta bai kolektiboki. Gainera, aukera ematen dizu sindikatuko erabakietan hitza eta botua izateko eta motibatzen zaituzten proposamenak asanbleara eramateko. Baina ez ahaztu inplikatu behar duzula.

Era berean, jendea animatu nahi dugu langileen asanblada independienteak sor ditzan, CNTkoak izan gabe ere. Gure ustez, sindikatua tresna baliagarria da hainbat kontu errazteko, baina benetan garrantzitsuena da modu asanblearioan antolatzea, CNTren barruan edo zure kabuz, zu bezalako beste pertsona batzuekin. Langile arteko asanblada bat egitea erabakitzen baduzu ere, gure laguntza izango duzu eta animatzen zaitugu gurekin harremanetan jartzera, ekintza sindikala ahalik eta eraginkorrena izateko.

# Informa zaitez, antola zaitez, defenda zaitez.




Lanaren Konfederakuntza Nazionala
Gipuzkoa

Olaeta Enparantza (ferrerías) S/N